# San Andres, apostolua



## Andres apostoluaren EREKSERKIA

1

Jesusen deia entzun zendunean
zure bihotza fedez bete zan,
**langailuak itxita bazterrean**
**giza arrantzale bihurtu zinan**
**Jesus Jaunak esandako bidean**
**bizi poza aurkitu zenduan** (bir)

2

Ander, gaur gatoz zugana kantari
ospatu nahirik zure eguna
**zuretzat maisu izan zan Jaunari**
**eskatu gu danon batasuna**
**bizi dagigun leial ta pozgarri**
**Kristok esandako barri ona** (bir)

3

Alkartasun, bake eta egia
lagun gagizuz gurean lortzen
**zure antzera apostolu herria**
**izatean alaitu gaitezen**
**zure bitartez, apostolu handia,**
**gure bizitzak poztu daitezen** (bir)

**Sarrera-oharra**

Senideok: Andres apostoluaren liturgia ospatzeko alkartu gara baseliza honetan. Jesusek lehenengo deitua dogu Andres (**Protokletos** deitzen deutsoe horregaitik), eta honek bere anaia Simon erakarri eban Jesusengana.

Ortodoxoek Andresen ondorengoak dirala uste dabe; Katolikook Pedroren ondorengoak; eta zatituta gagoz.

Gure gurasoek kristinauak zirala/dirala..., baina seme-alabak sinismenetik aldenduta, gehienbat.

Zer deritzazue gaurko otoitzean hurrengo hiru eskariok egiteari?

1 Gure sinismena indartu eta gaurkotu deigula;

2 Kristau eleizak alkartu daitezala;

3 Gure ondorengoek sinismena besarkatu daiela.

Andres apostolua izango dogu eredu eta gidari.

**Sarrera-abestia**

Zein gozo ta eder dan anaiok alkartu
eta danok batera Jainkoa goratu.

—Gora bihotzak eta guztiok egin kantu:
Jainkoak bere eskuz salbatuko gaitu.

—Zabal gogoak Jaunaren Hitza entzuteko;
haren nahia jakinik zuzen ibilteko.

**Abadearen agurra**

† Aitaren eta semearen eta espiritu santuaren izenean.
—Amen.

† Bere jarraitzaile izatera deitzen gaituan Jauna izan bedi zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

**Damu-otoitza**

Irakatsi deuskuelako, edo ikasi dogulako, ez gara bizi Jesusen jarraitzaile lez. Jo daigun Jainkoaren errukira:

—Jesus Jauna, zeure inguru**ra** deitzen dozuna, *erruki, Jauna*.

—Jesus Jauna, erreinuko langile e**gi**ten gaituzuna, *Kristo, erruki*.

—Jesus Jauna, gugan us**te** ona dozuna, *erruki, Jauna*.

**Aintza**

Aintza, Jaungoiko Aitari.
Aintza, Haren Semeari.
Aintza Espiritu Santuari.

**Otoitza**

Zuri, Jaun handi horri, apalik eskatzen deutsugu,
Andres apostolu santua
zure Eleizearen predikari eta artzain izan zan lez,
izan dadila beti zure aurrean gure aldeko erregutzaile.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan. AMEN.

**Irakurgaiari sarrerea** (*Erm* 10, 9-18)

Begira zelango garrantzia dauan Jesus ezagutzeak eta haren barri inguruan iragarteak: salbamen iturri da.

*Mezutik dator sinistea,*
*eta Kristoren barri emotea da mezua.*

**San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik**

Senideok: Zeure ahoz autortzen badozu Jesus Jauna dala, eta zeure bihotzean sinisten badozu Jainkoak hilen artetik biztu ebala, salbatuko zara. Izan be bihotzez sinisten dauana zuzentzat hartzen dau-eta Jainkoak, eta ahoz autortzen dauana salbatu egiten da. Liburu Santuak dino: «Harengan sinisten dauana ez da lotsagarri izango».

Judegu izan ala ez, ez dago bereizketarik, bat bera da-eta guztien Jauna, dei egiten deutsoen guztientzat eskuzabala. Izan be, «Jaunaren izenari dei egiten deutsona salbatuko da».

Zelan, ostera, dei egin, harengan sinisten ez badabe? Zelan sinistu, haren entzuterik ez badabe? Zelan entzun, nork iragarririk ez bada? Zelan iragarri, haretarako bialdurik ez bada? Liburu Santuak dinoan lez: «Bai ederrak barri onak ekartzen dabezanen oinak!» Ez deutsoe, ostera, danek harrera ona egin Barri Onari. Isaiasek dino: «Jauna, nork sinistu dau gure mezua?» Beraz, mezutik dator sinistea, eta Kristoren barri emotea da mezua.

Eta nik itauntzen dot: «Ez ete dabe entzun?» Bai, horixe: «Lurbira guztira zabaldu da hareen berbea, munduaren bazterreraino hareen mezua».

Jaunak esana.

**Erantzun salmoa**

Gauza ederrak ez dira gordeta euki eta norbere atseginerako; hareen barri emon eta guztien zorionerako baino. Ikasi daigun Izaditik.

*Sal* 19 [18], 2-3. 4-5b (R/. 5a)

**Sal 018 Lurbira guztira** Udaia'23

R/. Lur-bi-ra guz-ti-ra za-bal-tzen da ha-re-en a-ho-tsa.

**R/. Lurbira guztira zabaltzen da hareen ahotsa.**

Zeruek Jainkoaren aintza dabe kontatzen,
ortziak haren eskuen lana iragartzen.
Egunak egunari luzatzen deutso mezua,
gauak gauari jakinarazoten. R/.

Berbotsik eta hitzik barik,
entzun ezinezkoa da hareen ahotsa.
Lurbira guztira zabaltzen da hareen hotsa,
munduaren bazterreraino hareen hizkera. R/.

**Ebanjelioari sarrerea** (Mt 4, 18-22)

Jesusek erreinua iragarten dihardu, eta, lehen gauza lez, lanean dihardueneì egingo deutse dei, talde bat osotzeko eta bialduak izateko. **Aleluia** abestuz egin deiogun harrerea, zutunik.

**R/. Aleluia.**

V/. Zatoze Neugaz, dino Jaunak,
eta giza arrantzale egingo zaituet R/.

*Hareek, bat-batean, ontzia eta aita itzirik,*
*jarraitu egin eutsoen.*

**✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik**

Aldi haretan, Jesusek, Galileako laku-bazterrean zehar ebilela, anaia bi, Simon, Pedro deitua, eta haren anaia Andres, ikusi zituan, sarea uretara botatzen, ze arrantzaleak ziran. Jesusek esan eutsen: «Zatoze neugaz eta giza arrantzale egingo zaituet». Hareek, beste barik, sareak itzi eta jarraitu egin eutsoen.

Aurrerago, beste anaia bi ikusi zituan, Santiago eta Joan, Zebedeoren semeak, aitarekin ontzian sareak konpontzen. Eta dei egin eutsen. Hareek, behingoan, ontzia eta aita itzirik, jarraitu egin eutsoen.

Jaunak esana.

**HERRI-OTOITZA (Eskariak)**

Eleiz taldea eratzeko eta Erreinua iragarteko dei egiten deuskun Jaunagaz aurkeztu deioguzan eskariak Jainko Aitari:

—Eleizearen alde: bere lehentasuna Erreinuaren

iragarpena izan daiten, pobreekin, bazterreratuekin eta ezereztuekin alkartasuna erakutsiz, *eskatzen deutsugu, Jauna*. ZEUGAN DOGU USTE ONA.

**URTEAN ZEHARREKO EKARIETAN** *Udaia'21*

V/. Es - ka - tzen deu - tsu-gu, Jau - na. R/. Zeu - gan do - gu us - te o - na

—Gorrotoa eta alkar ikusezina nagusi diran lurraldeetan parkamena eta bakea erditzen ikusi daigun, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Etorkinek gure lurraldeetan ateak zabalik aurkitu daiezan, eta behar daben laguntza eskuratu, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Eukaristiarako alkartu garanok, esker oneko erantzuna emon deiogun dei egiten deuskun Jesus Jaunari, eleiz alkartea gaurkotzen ahaleginduz, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

Gure eskariak onartzen dozuzan Jainko ona: somau zaiguzala geure ondoan, adore-emoile, eskatua gauzatu ahal izateko. Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez. —Amen.

## EUKARISTIAREN LITURGIA

Bedeinkatua Zu, Jauna, zeru-lurren Jaungoikoa;
zeure esku zabaletik hartu dogu
orain ekarri deutsugun ogi hau,
lurraren indarrak eta gizakiaren lanak sortua;
hauxe egingo jaku biziaren ogi.

*Bedeinkatua Zu, Jauna, orain eta beti.*

Bedeinkatua Zu, Jauna, zeru-lurren Jaungoikoa;
zeure esku zabaletik hartu dogu
orain ekarri deutsugun ardao hau,
mahatsondoaren indarrak eta gizakiaren lanak sortua;
hauxe egingo jaku betiko zorionaren edari.

*Bedeinkatua Zu, Jauna, orain eta beti.*

Senideok,
egin daigun otoitz guztiok batean,
Eleiza osoaren oparia Jainkoari eskeintzerakoan.

*Jainkoa goresteko eta gizakia salbatzeko.*

**Oparien gaineko otoitza**

Jainko ahalguztiduna, egin gagiezala zure gogoko
Andres santuaren jaia ospatzeko
dakartsuguzan emoitzek,
eta eurok hartzeak bizibarritu gaizala.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**Prefazioa**

V./ Jauna zuekin R./ Eta zure espirituarekin
V./ Gora bihotzak R./ Jaunagan daukaguz
V./ Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari R./ Egoki da eta zuzen.
Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri.

Zuk, betiko Artzain horrek,
ez dozu bertan behera izten zeure artaldea,
ezpada ze zeure babespean zaintzen dozu beti,
zeure Apostolu santuen bidez;
eurak dira zure Semearen ordezkariak,
zure artaldeari artzain eta zuzendari izateko emonak.

Horregaitik, aingeru eta goiaingeruekin
ahalmen, nagusitza eta zeruko talde guztiekin,
zure aintzari gorazarre hau
beti eta beti [esaten] abesten deutsagu:

Santu, Santu, Santua,
diran guztien Jainko Jauna.
Zeru-lurrak beterik daukaz zure distirak.

Hosanna zeru-goienetan!
Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena.
Hosanna zeru-goienetan!

## II. EUKARISTI OTOITZA

**Santu zara**, bai, Jauna,
eta santutasun guztiaren iturri;
egizuz, bada, santu ogi-ardao honeek,
zeure Espiritua isuriz,
Jesu Kristo gure Jaunaren Gorputz eta † Odol
egin daitezan guretzat.

**Berak**, saldu ebenean
eta bere gogoz kurutzera joiala,
ogia hartu eta, eskerrak emonez,
zatitu eban eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:
HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

**Era berean**, afalondoan, kaliza harturik,
barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**V/.** Hau da sinismenaren misterioa.

**R/.** Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte,

hau dogu, hau, barri ona!

**Horregaitik**, Jauna,
zure Semearen heriotza eta biztuera gogoratuz,
biziaren ogia eta salbamenaren kaliza
eskeintzen deutsuguz,
Zuri eskerrak emonez,
altaran zeure zerbitzari onartu gaituzulako.

**Eta apalik** eskatzen deutsugu,
Kristoren Gorputza eta Odola hartzen ditugunok
Espiritu Santuak bat egin gaizala.

**Izan gogoan**, Jauna,
mundu guztian zabaldurik dagoan zeure Eleizea;
eroaizu maitasun osora,
Frantzisko gure Aita Santuarekin,
Joseba gure Gotzainarekin,
~~*(I. Gotzain Laguntzailearekin,)*~~
eta eleiz-gizon (-emakume) guztiekin batean.

**Baita izan** gogoan, Jauna,
bizteko itxaropenean joan diran gure senideak
eta hildako guztiak ere *(Asterria auzo honetakoak)*;
hartu egizuz zeure aurpegiaren argitan.

**Erruki zakiguz**, arren,
guk guztiok betiko bizitza jaritsi daigun,
Jainkoaren Ama Maria Birjina dohatsuarekin,
haren senar Jose santuarekin,
**Andres** apostoluarekin,
eta, gizaldi guztietan,
zure adiskide izan diran santuekin;
eurekin batera goratu zaiguzan,
Jesu Kristo zure Semearen bitartez.

HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN,

ZURI, JAINKO AITA AHALGUZTIDUN HORRI,
ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN,
OSPE ETA AINTZA GUZTIA
GIZALDI ETA GIZALDI GUZTIETAN.

**Amen.**

† Salbatzaileak agindu eta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik, emoiguzu bakea gure egunotan, zure errukiari esker pekatutik garbi bizi izan gaitezan eta estualdietan sendo; betiko zorionaren itxaropenean Jesukristo gure Salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozela.

—Zeurea dozu erregetza; zeureak ospe ta indarra orain eta beti.

† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei ‘bakea izten deutsuet, neure bakea emoten’; begira zure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa danez, emoiozu Eleizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.

—Amen.

† Jaunaren bakea beti zuekin.

—Eta zure espirituarekin.

† Emon deiogun bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: Erruki, Jauna.
… emoiguzu bakea.

**Jaunartzea**

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:

—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

**Jaunartzean**

**Jesus maitea zan** azken Afarian
bera emon nahirik ardao ta ogian.
Guretzat zalarik hilteko aurrean
maitasunak eukan bihotza menpean.
**Gurtu daigun beti Jesus Jainko Jauna,**
**sakramentu honetan gurekin dagoena.**

Apostoluei minez esan deutse:
«Ni gaur saldua naiz, bihar hilgo nabe.
Aitarenganako denpora jat bete,
hona orain zenbat zaituedan maite.»

**Gurtu daigun beti Jesus Jainko Jauna,**
**sakramentu honetan gurekin dagoena.**

**Jaunartze ondorengo otoitza**

Hartu dogun sakramentuak, Jauna,
bete gaizala indarrez;

Andres apostolu santuak lez,
Jesusegaz nekeak eroanik,
zeruko aintzan beragaz bizi izatea lortu daigun.
Errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan. AMEN.

**Azken oharra**

Adore eta indar barrituekaz urten geike eleizkizun honetatik. Eta badaukagu zer eginik: Jesusek bere autorle izatera bialtzen gaitu, batasunean jokatzera eta alkar maitatzera. Ez deiogun huts egin. Bilatu daigun eleizgintzan esku hartzea eta pobre eta bazterreratuekaz alkartasuna erakustea.

**Azken onespena**

† Jauna zuekin.
—*Eta zure espirituarekin*

† Bedeinka ta gorde gaizala Jainko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak eta Espiritu Santuak.
—*Amen*.

Alkartuta goazen, aurrera kantari
bideak zabalduz betiko pozari.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta

beti guk Zuri eskerrak e-mo-te-a, Jauna, Aita guz-tiz san-tu,

Jainko ahalguzti-dun be-ti - ko ho-rri. Zuk, beti - ko Artzain

horrek, ez dozu bertan behera izten zeure ar-tal-de-a, ezpada ze

zeure babespean zaintzen dozu beti, zeure Apostolu dohatsu-en bi-dez;

honeek zure Semearen ordezkari-ak di-ra, zure artaldeari artzain eta

zuzendari i-za-te-ko e-mo-nak. Horregai-tik, aingeru eta goiainge-

ru-e-kin, ahalmen, nagusitza eta zeruko talde guz - ti - e - kin,

zure aintzari goraza-rre hau beti eta beti a-bes-ten deu-tsa-gu: